# URTEAN ZEHARREKO II. DOMEKA

## A urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nazinoen argitzat ezarriko zaitut,*
*nire salbazinoa lurraren azken mugaraino heldu dadin.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 49, 3. 5-6

Jaunak esan eustan:
«Zeu zara nire zerbitzaria, Israel,
zure bidez agertuko dot neure ospea».

Orain honan berba egiten dau Jaunak,
amaren sabelean eratu ninduanak haren zerbitzari izateko,
Jakoben leinuak harengana bihurtuazoteko
eta Israel herria batzeko.
Ohorez jantzi nau Jaunak
eta neure Jainkoa izan dot indar.

Jaunak esan deust:

«Ez da nahiko zu nire zerbitzari izatea,
Jakoben leinuak berreraikitzeko
eta Israelen bizirik geldituak bihurtuazoteko.
Nazinoen argitzat ezarriko zaitut,

nire salbazinoa lurraren azken mugaraino heldu dadin».
Jaunak esana.

Erantzun salmoa

*Sal* 40 [39], 2 eta 4ab. 7-8a. 8b-9. 10 (R/. ik. 8a eta 9a)

R/. **Hemen nozu, Jauna, zure nahia egin dagidan.**

V/. Jaunagan neban jarria itxaropen guztia,
makurtu eta entzun dau nire oihua.
Kantu barria ipini deust ezpanetan,
gorespen-kanta gure Jainkoarentzat. R/.

V/. Zuk ez dozu sakrifiziorik eta eskeintzarik nahi izan,
ez erre-opariririk eta pekatuen parkamen-opariririk eskatu;
baina belarriak edegi deustazuz.
Horregaitik dinot: «Hemen nozu». R/.

V/. Hauxe dago nitaz liburuan idatzita:
egin dagidala zure nahia.
Atsegin dot, ene Jainko,
barru-muinetan dot zure legea. R/.

V/. Iragarri dot batzar nagusian zure justizia,
ez ditut ezpanak itxi, ondo dakizu, Jauna. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Grazia zuei eta bakea*
*gure Aita Jainkoagandik eta Jesu Kristo Jaunagandik.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolaren hasiera

*1 Ko* 1, 1-3

Nik, Paulok, Jainkoak halan nahirik eta berak deiturik, Jesu Kristoren apostolu nazan honek, eta Sostenes anaiak, Korinton dagoan Jainkoaren eleiz alkarteari: grazia zuei eta bakea gure Aita Jainkoagandik eta Jesu Kristo Jaunagandik.

Jesu Kristok sagaratu zaitue eta Jainkoak bere herri santu izateko deitu, edozein lekutan Jesu Kristo gure Jaunari dei egiten deutsoen guztiekin batera, honeek eta guk Jaun bat bera onartzen dogu-eta. Grazia zuei eta bakea gure Aita Jainkoagandik eta Jesu Kristo Jaunagandik.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 1, 14a. 12a

R/. **Aleluia.**
V/. Hitza haragi egin zan,
eta geure artean jarri eban bizilekua.
Onartu eben guztiei
Jainkoaren seme-alaba izateko

ahalmena emon eutsen. R/.

## EBANJELIOA

*Hona hemen Jainkoaren Bildotsa,*
*hona munduko pekatua kentzen dauana.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 1, 29-34

Aldi haretan, ikusi eban Joan Bateatzaileak Jesus beragana etortzen eta esan eban: «Hona hemen Jainkoaren Bildotsa, hona munduko pekatua kentzen dauana. Beronegaitik esan neban nik: "Badator nire ostean gizon bat, niri aurrea hartu deustana, ze, ni baino lehenagotik bazan". Neuk be ez neban ezagutzen; baina ni urez bateatzera etorri banaz, bera Israeli agertuazoteko etorri naz».

Eta autormen hau egin eban Joanek: «Espiritua ikusi dot uso-irudian zerutik jaisten, eta haren gainean gelditzen. Neuk be ez neban ezagutzen; baina urez bateatzera bialdu ninduanak esan eustan: "Espiritua jaisten eta gainean gelditzen jakola ikusten dozuna, haxe da Espiritu Santuaz bateatzen dauana". Neuk ikusi dot eta autortzen hauxe dala Jainkoaren Semea».

Jaunak esana.

# URTEAN ZEHARREKO II. DOMEKA
## B urtean

### I. Irakurgaia

*Esan, Jauna; zure morroi hau entzuten dago.*

Samuel lehenengo liburutik

*1 Sm* 3, 3b-10. 19

Egun hareetan, Samuel lotara joan zan, Jainkoaren kutxa egoan Jaunaren santutegian.

Jaunak dei egin eutson Samueli, eta honek erantzun: «Hemen nozu». Arin-arin Eligana joan eta esan eutson Samuelek: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta». Elik erantzun eutson: «Ez deutsut nik dei egin; bihurtu eta egizu lo». Joan eta lotarako etzun zan.

Jaunak barriro dei egin eutson Samueli. Hau jagi eta Eligana joan zan, esanez: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta». Elik erantzun eutson: «Ez deutsut nik dei egin, seme; bihurtu eta egizu lo». Samuelek ez eban ordura arte Jauna ezagutzen, Jaunak ez eutson-eta bere hitza inoiz be adierazo.

Hirugarren aldiz dei egin eutson

Jaunak Samueli. Hau jagi eta Eligana joan zan, esanez: «Hemen nozu, dei egin deustazu-eta».

Igarri eutson Elik Jaunak ziharduala mutikoari deika, eta esan eutson Samueli: «Zoaz lotara eta, norbaitek barriro dei egiten badeutsu, erantzun: "Esan, Jauna; zure morroi hau entzuten dago"». Bihurtu zan Samuel bere tokira eta lotarako etzun zan.

Jaunak, hurreraturik, dei egin eutson, besteetan lez: «Samuel, Samuel!» Eta Samuelek erantzun: «Esan, zure morroi hau entzuten dago».

Samuel haziz joian, eta Jauna beragaz eban. Ez zan Jaunaren hitz bakar bat be bete barik gelditu.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 40 [39], 2 eta 4ab. 7-8a. 8b-10 (R/. ik. 8a eta 9a)

R/. **Hemen nozu, Jauna, zure nahia egin dagidan.**

V/. Jaunagan neban jarrita itxaropen guztia,
makurtu eta entzun dau nire oihua.
Kantu barria ipini deust ezpanetan,
gorespen-kanta gure Jainkoarentzat. R/.

V/. Zuk ez dozu sakrifiziorik eta eskeintzarik nahi izan,
ez erre-oparirik eta pekatuen parkamen-oparirik eskatu;
baina belarriak edegi deustazuz.
Horregaitik dinot: «Hemen nozu». R/.
V/. Hauxe dago nitaz liburuan idatzita:
egin dagidala zure nahia.
Atsegin dot, ene Jainko,
barru-muinetan dot zure legea.
Iragarri dot batzar nagusian zure justizia,
ez ditut ezpanak itxi, ondo dakizu, Jauna. R/.

## II. IRAKURGAIA

*Zuen gorputzak Kristoren atal dira.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 6, 13c-15a. 17-20

Senideok: Gorputza ez da haragikeriarako, Jaunarentzat baino, eta Jauna gorputzarentzat. Jainkoak, Jauna biztu ebanak, biztuko gaitu geu be bere ahalmenaz.

Ez ete dakizue zuen gorputzak Kristoren atal dirana? Jaunagaz alkartzen dana, espiritu bat bera egiten

da haregaz.

Egizue ihes haragikeriatik. Gizon-emakumeek egiten dabezan beste pekatu guztiak gorputzetik kanpora gelditzen dira; baina haragikeriazko pekatua egiten dauanak bere gorputzaren aurka egiten dau pekatu.

Ez ete dakizue zuen gorputza Jainkoak emon deutsuen eta zuengan bizi dan Espiritu Santuaren tenplu dana? Beraz, ez zarie honezkero zeuonak; karu ordainduz eskuratu zaitue Jainkoak. Goratu egizue, bada, Jainkoa zeuen gorputzaz.

Jaunak esana.

## Aleluia

*Jn* 1, 41. 17b

R/. **Aleluia.**

V/. Mesias aurkitu dogu, hau da, Kristo. Grazia eta egia honen bidez etorri dira.

R/.

## EBANJELIOA

*Ikusi eben non bizi zan,*
*eta beragaz gelditu ziran.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik

*Jn* 1, 35-42

Aldi haretan, han egoan Joan Bateatzailea bere ikasle bigaz. Jesus bertatik igarotzen ikusirik, esan eutsen: «Horra hor Jainkoaren Bildotsa». Ikasle biek, hori entzunda, Jesusi jarraitu eutsoen. Bihurtu zan Jesus eta, jarraitzen eutsoela ikusirik, esan eutsen: «Zeren bila zabiltze?»

Hareek erantzun: «Rabbi, non bizi zara?» (Rabbik «Maisu» esan gura dau). Jesusek esan eutsen: «Zatoze eta ikusiko dozue». Joan ziran, ikusi eben non bizi zan, eta beragaz gelditu ziran egun haretan. Arratsaldeko laurak inguru zan.

Joani entzun eta Jesusi jarraitu eutsoen bietariko bat Andres zan, Simon Pedroren anaia. Andresek bere anaia Simonegaz egin eban topez lehenengo, eta esan eutson: «Mesias aurkitu dogu». (Mesias hitzak «Kristo» esan gura dau, hau da, «Gantzutua»).

Eta Jesusengana eroan eban. Jesusek, begira-begira jarriz, esan eutson: «Simon zara zu, Joanen semea; aurrerantzean “Kefas” izango da zure izena» (Kefas izenak «Pedro» esan gura dau, hau da, «Hatxa»).

